etxerat

euskal errepresaliatu politikoen senide eta lagunak

familiares y allegados de represaliados políticos vascos

parents et amis de prisonniers et exilés politiques basques



# hilabetekaria

2014 apirila

# aurkibidea

# apirila

Apirilak zer utzi digun aipatzeko unean, gaixorik dauden euskal preso politikoen egoera gogorra eta kezkagarria ezin da aipatu gabe utzi, Espainiako gobernuak bere krudelkeria eta mendeku gogoa agerian utzi dituelako berriz ere. Itxura gogorra erakutsi nahi du eta helburu hori lortzeko egoera makalean daudenen aurka gogor egin behar dela erabaki du, esan nahi baita, euskal preso gaixoak. Eta zitalkeria horren adibide gisa hiru herri aipatu behar ditugu, Arrasate, Ondarru eta Tafalla.

Josu Uribetxebarria arrasatearrak gaitz larria pairatzen du eta baldintzapeko askatasunean zegoen, baina apirilean etxean preso egon behar duela erabaki dute. Beraz, orain ezin da etxetik atera, sendagilearengana joateko besterik ez. Ibon Iparragirre ondarrutarrak ere gaitz larria pairatzen du eta etxean espetxe zigorra era arinduan betetzen ari zen, baina Ertzaintzak atxilotu eta Basauriko espetxera eraman zuen. Basaurin astebetean bi aldiz erasotu dute apirilean eta azkenik, Navalcarneroko espetxera urrundu dute, Euskal Herritik eta senideengandik urruti. Ventura Tomé tafallarrak ere gaitz larria pairatzen du, urte t´erdiko epean bi minbizi mota aurkitu dizkiotelako. 2013ko ekainean egindako froga batean birikako minbizia aurkitu zioten, baina sei hilabete igaro arte ez zioten ezer jakinarazi. Apirilean ebakuntza egin diote eta birika baten erdia kendu diote. Gaur egun Murtziako espetxean dute, Euskal Herritik urruti.

**491**

Ez ditugu gaixorik dauden beste euskal presoak inolaz ere ahaztu nahi(Txus Martin, Aitzol Gogortza, Ibon Fernandez eta besteak), baina aipatutako hiru kasu hauek bakerik nahi ez duen Espainiako gobernuaren ankerkeria eta zitalkeria erakusteko adibide garbiak dira. 2013ko urrian Europako giza eskubideen epaitegiak 197/2006 doktrina indargabetu zuen giza eskubideak urratzen zituelako eta Espainiako gobernuari epai hori mingarria suertatu zaio. Beraz, orain euskal presoen aurka mendeku bila dabil eta mendeku hori gauzatzeko egoerarik txarrenean daudenak aukeratu ditu, gaitz larriren bat pairatzen duten euskal preso politikoak hain zuzen ere.

Gaixorik dauden euskal preso politikoen egoera onartezina da. Espetxea ez da gaitz horiek zaintzeko eta artatzeko tokirik egokiena eta denok ahaleginik handienak egin behar ditugu preso gaixoen egoera modu egokian bideratzeko. Euskal preso gaixoek espetxetik kanpo egon behar dute. Euskal preso gaixoen aurkako mendekurik ezin da onartu. Espainiako gobernuaren krudelkeria eta zitalkeria ezin dira onartu. Euskal gizarteak aski dela ozen adierazi behar du eta honelakoak berriz ere gerta ez daitezen sakabanaketa denon artean ito behar dugu.

**ETXEAN ETA BIZIRIK NAHI DITUGU!!!**

# sakabanaketa

## 491 euskal preso politiko 77 espetxetan sakabanatuta

- **372** preso espainiar estatuko 44 espetxetan sakabanatuta
- **104** preso frantziar estatuako 27 espetxetan sakabanatuta
- **4** preso Euskal Herriko 3 espetxetan
- **1** Ingalaterrako espetxe batean
- **1** Portugalgo espetxe batean
- **1** Sei Kondarrietako (Ipar Irlanda) espetxe batean
- **8** preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasunak direla eta

- **64** euskal preso Euskal Herritik **1000 eta 1100** kilometrotara dauden espetxeetan
- **134** euskal preso Euskal Herritik **800 eta 1000** kilometrotara dauden espetxeetan
- **93** euskal preso Euskal Herritik **600 eta 800** kilometrotara dauden espetxeetan
- **118** euskal preso Euskal Herritik **400 eta 600** kilometrotara dauden espetxeetan
- **67** euskal preso Euskal Herritik **400** kilometrotara baino gutxiago dauden espetxeetan
- **3** euskal preso Euskal Herritik urrun dauden 3 herrialdetako espetxeetan

# Gaixotasuna eta espetxea

Mati Iturraldek idatzia (Jeiki Hadi sendagile elkarteko kidea)

Espetxea zer den dakien edonork gune osasungarria ez dela badaki, baina askatasunik gabe egotearen ondorioz espetxeak ez du gaixotasuna eragiten, osasun arazoa erraz konpon daitezkeen beste faktore batzuek eragiten dutelako, eta besteak beste, garbitasuna, elikadura, preso pilaketa eta osasun zerbitzu egoki eza aipatu behar dira. Baldintza hauek modu egokian beteko balira, giltzapean egonik ere osasun egoera onean egotea ez litzateke arazoa izango.

Hamarkadetan zehar Espainiako gobernu ezberdinek euskal presoekiko espetxe politika zehatzak burutu dituzte, eta horren ondorioz espetxe erregimenean salbuespen neurriak ziren aldaketa esanguratsuak ezarri ziren, bereziki sakabanaketa eta bakartzea. Sakabanaketa eta bakartzearen bidez saiakera ugari burutu dituzte, baina hala ere orain gaitz larriren bat pairatzen duten euskal presoei askatasuna etengabe ukatu egiten zaie edo presoak ia hilzorian egon behar du Josu Uribetxebarriaren kasuan gertatu zen bezala. Baina neurri bihozgabe hauek ere ez dira aski izan eta Espainiako gobernuak krudelkeriaz jokatu du berriz ere. Orain Josu Uribetxebarriak etxean preso egon behar duela erabaki dute eta gaitz larri baten ondorioz etxean espetxe zigorra modu arinduan betetzen ari zen Ibon Iparragirre espetxeratu dute.

11

Buru gaitzen bat pairatzen duten euskal presoen egoera ikusirik, espetxean egoteak ez du inolaz ere laguntzen gaitza artatzeko prozesuan, espetxeko egoeraren ondorioz gaitzak okerrerako bidea hartzen duelako. Hauxe da Aitzol Gogortza eta Txus Martinen egoera. Biak Basauri eta Zaballako espetxeetan bakarrik dauzkate eta beraien egoera gero eta kezkagarriagoa dela esan beharra dago.

Espetxe sistema demokratiko batean honelako neurriak onartezinak direla ongi asko dakite, presoari zigor gehigarriak ezartzea baztertu behar delako eta, esate baterako, presoa ziega ilun batean jartzea edo zigor krudel, umi-

lagarria eta inhumanoak ezartzea, Nazio Batuen erakundeak adierazitakoaren ildotik, presoa zigortzeko guztiz debekatu behar dira.

Osasunaren Nazioarteko Erakundeak adierazitakoaren arabera, espetxeko eta kanpoko bizitzaren arteko ezberdintasunak ahalik eta txikiena izan behar du osasun ikuspegi batetik. Eta horren ondorioz segurtasun baldintza zorrotzetan egon beharreko preso kopuruak ere txikiena izan behar du, osasun eskubidearekiko begirunea ziurtatzeko ezinbesteko baldintza delako.

Hala ere, Espainiako gobernuak euskal presoen bizi-baldintzetan hobekuntzarik txikiena ere lortzeko egindako gomendioak behin eta berriz baztertzen ditu, eta egoera hau ezagutarazi eta salatu beharra dago. Senideok eta adiskideok ahalik eta erakunde, talde eta elkarte gehienetan egoera hau ozenki salatu behar dugu.

Gizarteari egoera honen larritasuna jakinarazi behar zaio, gaitz larriren bat pairatzen duten euskal presoak espetxean dauden bitartean, estatuaren krudelkeriak bake egoeratik urrundu eta bidegabekerian bizitzera behartzen gaituelako.

# salbuespen neurriak

## bizi osorako espetxe zigorra

Frantziar estatuan, bizi osorako espetxe zigorrari dagokionez, ez da urte kopuru maximorik. Biziarteko zigorrera ("perpétuité" deitzen duten neurria) kondenatua den preso batek baldintzapeko askatasuna eska dezake 15 urteren buruan (edo "segurtasun kondena" bete ondoan, kondenari neurri hau gehitzen bazaio), baina, erabakia Kondenen Aplikapenen Epailearen esku da, eta honek etengabe uka dezake. Preso sozial batzuek kasik 50 urte pasa dituzte Frantziako kartzeletan.

Euskal preso politikoen artean, 4 neurri honen pean aurkitzen dira gaur egun: 24garren urtea betetzen ari diren **Jakes Esnal, Frederik Haranburu** eta **Ion Kepa Parot**, eta 2013an kondenatu duten **Mikel Karrera**. Beste hainbat euskal presori bizi arteko zigorra eman diete "de facto" oso kondena luzeekin edota kondena ezberdinak akumulatuz.

Espainiar estatuari dagokionez, bizi osorako zigorra ahalbidetzen zuen 197/2006 doktrina indargabetu ostean, **gure senide eta lagun ugari** 40 urteko espetxe zigorra betetzera zigortu dituztela. Hau da, bizi osorako espetxe zigorrak aplikatzen dizkiete.

# espetxeetan

## eskubide urraketak

## bestelako gertakariak

### isolamendua

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

| | | |
|---|---|---|
| **Euskal Herria** | Zaballa | Txus Martin |
| | Basauri | Aitzol Gogorza |
| | Basauri | Ibon Iparragirre Burgoa |
| **Espainiar estatua** | Alacala | Jose Campo |
| | Almeria | Iratxe Yañez |
| | Castello I | Marta Igarriz |
| | Mansilla | Olga Comes |
| | Murcia II | Oihana Mardaras |
| | Puerto III | Arantza Zulueta |
| | Segovia | Jon Enparantza |
| | Soto del Real | Iñaki Lerin |
| | Valladolid | Miren Zabaleta |
| **Frantziar estatua** | Tarascon | Alex Akarregi |
| **Portugal** | Monsanto | Andoni Zengotitabengoa |
| **Sei Konderriak** | Belfast | Fermin Vila |
| **Ingalaterra** | Long Lartin | Raul Fuentes |

# komunikazio eta bisitak

**Herrera :** Apirilaren 4an Herrerako espetxean Faustino Marcos Alvarez preso donostiarraren anaiari aurrez aurreko bisita egitea debekatu zioten. Droga atzemateko guardia zibilak txakurrekin egindako miaketa batean ez zioten deus ere aurkitu, baina hala ere aurrez aurreko bisita egitea debekatu zioten.

# askatasunak

**Rubenach Roiz German** (Iruñea), apirilaren 4an zigorra bete eta gero aske gelditu zen.
**Gelbentzu Gonzalez Ruben** (Andoain), apirilaren 4an aske gelditu zen.
**Lizarribar Lasarte Jon** (Urnieta), apirilaren 4an aske gelditu zen.
**Esparza Ortega Iker** (Iruñea), apirilaren 14an zigorra bete eta gero aske gelditu zen.
**Paul Larrea Urtzi** (Getxo), apirilaren 14an zigorra bete eta gero aske gelditu zen.
**Marin Etxeberria Alberto** (Bilbo), apirilaren 19an zigorra bete eta gero aske gelditu zen.
**Urra Guridi Kepa** (Aretxabaleta), apirilaren 21ean zigorra bete eta gero aske gelditu zen.
**Amantes Arnaiz Josu** (Bilbo), apirilaren 28an zigorra bete eta gero aske gelditu zen.

# espetxeratzeak

**Uribetxebarria Bolinaga Josu** (Arrasate), apirilaren 8an jasaten duen gaixotasun larriagatik eman zioten baldintzapeko askatasuna Audientza Nazionalak suspenditu ta gero, berriz espetxe arinduan ezarri dute.

# leku aldatzeak

## destino aldaketa

ESPAINIAR ESTATUA
**Zulueta Amutxastegi Arantza** (Lekeitio), Estremeratik Puerto IIIra
**Aginako Etxenagusia Asier** (Durango), Aranjuezetik (M-VI) Castelló IIra
**Aginagalde Ugartemendia Beñat** (Hernani), Meaux Chauconinetik Soto del Realera
**Garzia Montero Ainhoa** (Hernani), Réau Sud Francilienetik Soto del Realera
**Iparragirre Burgoa Ibon** (Ondarru), Basauritik Navalcarnerora
**Arietaleniz Telleria Iñaki** (Bergara), Alcala Meco (M-II)etik Murcia IIra
**Urretabizkaia Saukillo Jon** (Elorrio), Cordobatik Puerto Iera
**Martitegi Lizaso Jurdan** (Durango), Estremeratik Nanterrera

FRANTZIAR ESTATUA
Trasladorik ez apirilan

# hilabeteko gaia

## Oso larriki eri den Josu Uribetxebarria euskal preso politikoaren anaiari elkarrizketa

**Apirileko hilabetekarian Jabier Uribetxebarriari egindako elkarrizketa dakargu. Larriki gaixorik dagoen Josu Uribetxebarria euskal preso politikoaren anaia da. Elkarrizketa bere etxeko sukaldean burutu zen, eta Jabierrek bere anaiari gaitz larria aurkitu ziotenetik senideek egoera hori nola bizi izan duten azaltzen digu. Gaixorik dauden gainerako euskal preso politikoen senideek antzeko egoera gogorrak pairatzen dituzte, eta elkarrizketa honen bidez egoera hau salatu nahi dugu.**

**Zure anaiaren osasun arazoa noiz eta nola sortu zen?**

Beno, nolabait azaltzeko hauxe esango dut. 2005ean anaia Cadizko espetxe batean (Puerto II) zegoela, ezkerreko giltzurrinean minbizia aurkitu zioten, baina dena ongi joan zen. Sendagileek arazoa azaldu eta eta anaiari Euskal Herrira joan nahi ote zuen galdetu zioten. Anaiak baietz erantzun eta Donostiako ospitalera azkar ekarri zuten. Donostian bere egoera aztertu zuten eta arazorik ez zela egongo eta ebakuntza normala izango zela esan zioten. Ebakuntza egin eta giltzurrina kendu zioten. Ebakuntzaren ondorengo zainketak eta frogak ongi burutu ziren. Anaia Langraitzen utzi zuten eta bertan lau urte edo egon zen. Azkenean, sendaturik zegoela eta, Euskal Herritik Leongo espetxera (Mansilla) eraman zuten. Leonen kontrolak egiten zizkioten eta birikan zerbait txikia zuela konturatu ziren, baina sendagileei ez zitzaien kezkagarria iruditu, edozer izan litekeelako. Urtez urte pixka bat handitzen zela bazekiten, baina sendagileek anaiari lasai egoteko esan zioten. Beraz, sendagileek hori esanik, anaia lasai gelditu zen. Baina 2012ko udan anaia buruko min handiak jasaten hasi zen eta ospitalera eraman zutenean, bere egoera oso larria zela konturatu ziren. Birikako minbizia zuen eta buruan ere hiru nodulo zituen zerebeloaren ondoan, eta hori txarrena zen. Donostiara ekartzeko behar zirenak azkar egin zituzten eta ekarri egin zuten. Guri sendagileak anaiaren gaitza hilabete gutxiko kontua zela esan zigun, anaiak ez zuela luzaro bizirik iraungo. Donostiako ospitalean ertzainekin arazoak izan zituen eta anaiak bere egoera salatzeko eta bere eskubideak aldarrikatzeko gose greba egitea erabaki zuen. Azkenik, gora behera batzuk izan ondoren, anaiari bal-

dintzapeko askatasuna eman zioten eta Arrasatera itzuli zen. Geroztik anaia bakarrik bizi da, baina egunero norbait etxeko lanak (bazkaria eta honelakoak) egiteko laguntzera etortzen zaio. Goizean eta arratsaldean ibiltzera ateratzen zen. Baina orain bere egoera aldatu da. Espetxean 17 urte egin eta gero, ez dakit nondik 1986. urteko auzi zahar bat aurkitu dute eta orain etxean preso egon behar duela erabaki dute. Eta hauxe da egoera gutxi gora behera.

**Beraz, esan bezala, 2005ean ebakuntza egin eta gero zure anaia Langraitzen utzi zuten, ezta?**

Bai, Langraitzen utzi zuten eta bertan lau urte edo egon zen. Espetxe horretan osasun egoera aztertzeko kontrolak egin zizkioten, baina ez zuten arazorik aurkitu. Beraz, sendaturik zegoela eta, Euskal Herritik urrundu zuten, Leonera, esan bezala. Baina Leongo espetxean bi urte edo egin eta gero, minbizia berriz agertu zitzaion, oraingoan birikan. Lehen esan dudan bezala, sendagileei ez zitzaien kezkagarria iruditu, baina gaitzaren larritasunaz ohartu zirenean jadanik berandu zen, eta nik hauxe galdetu nahi nuke, sendagileek zergatik ez zizkioten froga batzuk egin anaiari gaitzaren larritasuna neurtzeko? Zergatik ez zuten ahaleginen bat egin anaiaren gaitza modu egokian aztertzeko eta artatzeko? Nik hauxe jakin nahi nuke. Anaiak birikan zerbait zuela bazekiten, baina ez zuten ezer egin.

**Eta Donostiako ospitalean zure anaiaren egoera zein zen? Sendagileekin zer nolako harremana zuen? Eta ertzainekin?**

Sendagileek modu egokian jokatu zuten eta ez zen arazorik izan. Arazoak ertzainekin izan ziren, haietako batzuek anaia probokatzeko joera zutelako. Ertzainek ez zuten bakean uzten eta egoera hori salatzeko eta bere eskubideak aldarrikatzeko gose greba egin zuen.

**Zure anaiari bere alde egindako aldarrikapen eta ekimenen berri iristen zitzaion? Kanpoko aldean zer gertatzen zen bazekien?**

Bai, anaiak Gara egunkaria egunero irakurtzen zuen eta guk ere gertatzen zena aipatzen genion. Beraz, anaiak bazekien kanpoko aldean zer gertatzen zen. Gu beti berarekin egon ginen zaintzeko eta babesteko.

**Gaitzaren larritasunaz ohartu zirenean jadanik berandu zen, eta nik hauxe galdetu nahi nuke, sendagileek zergatik ez zizkioten froga batzuk egin anaiari gaitzaren larritasuna neurtzeko? (...) Anaiak birikan zerbait zuela bazekiten, baina ez zuten ezer egin.**

Hasieran bai, mugaturik zegoen, baina beti norbait egoten zen berarekin. Zenbaitetan goizean eta arratsaldean eta beste batzuetan bakarrik goizean edo arratsaldean. Bisita orduetan berarekin

egon ginen beti eta anaia ez zen inoz bakarrik egon. Egia esan, ertzainekin ere ordu asko pasa zituen bakarrik, baina senideek lagunduta eta babestuta egon zen, bisita orduetan behintzat.




**Zure anaiari Cadizko espetxean lehenbiziko aldiz minbizia aurkitu ziotenean, zuek nola bizi izan zenuten hori?**

Egia esan, dena oso azkar egin zuten, Donostiara ekarri, ebakuntza egin eta giltzurrina kendu. Gu konturatzerako dena egina zegoen eta ia ez genuen ezer egiteko astirik izan. Ene ustez, egin behar zutena egin zuten, baina hori oso gutxitan gertatzen da eta gu nolabait harritu egin ginen.

**Eta Leondik Donostiara ekarri zutenean, zuek nola bizi izan zenuten hori?**

Gu izugarri kezkatu ginen. Anaiak minbizia duela entzuten duzunean zer gertatuko den eta hau nola bukatuko den galdetzen diozu zure buruari. Leongo sendagileek anaiaren egoera oso larria zela eta hilzorian zegoela esan ziguten, ez zuela bizirik luzaro iraungo. Anaiak buruko min handiak jasaten zituen eta hamar egunez gaizki pasa zuen, baina Leongo ospitalean min horiek kendu zizkioten. Gero, Donostiara ekarri zutenean tratamenduarekin jarraitu zuen eta gose greba egin eta gero radioa hartu zuen eta pilulen tratamenduarekin jarraitu zuen.

**Eta zure anaia baldintzapeko askatasunean atera zenean Arrasatera itzuli zen, ezta?**

Bai, Arrasatera itzuli zen, baina ezin zen herritik atera. Baldintzapeko askatasunean zegoen, baina Arrasatetik ateratzeko debekua zuen. Herritik ateratzeko baimena eskatu behar zuen, adibidez, sendagilearengana joateko edo Martuteneko espetxera hilean behin sinatzera joateko. Honelakoetan herritik ateratzeko baimena beti ematen zioten, baina batzuetan guk ezin genuen jakin baimena emango ote zioten. Zenbaitetan baimena azken unean iristen zen.

**Bestetik, zure anaia aske atera zenean Espainiako egunkarietan zure anaiaren kontura albisteak argitaratu ziren, bere egoera ez zela horren larria, herrian pasieran ibiltzen zela, tabernaz taberna ibiltzen zela...**

Nire anaiak 49 kilo zituen aske atera zenean eta ez zen ibiltzeko gauza, bi pausu eman eta nekatu egiten zelako.

Oso ahuldurik zegoen. Gose grebak indarrik gabe utzi zuen eta radio eta beste hartu behar izan zuen. Eta oso gogorra izan zen. Espainiako egunkarietan nire anaiaz idatzitakoak gezurrak ziren, anaia tabernaz taberna ez zelako ibiltzen, hori gezurra baita. Eta anaiaren osasun egoera oso larria zen, gaizki zegoelako, baina presioa sortu dute eta gezur horiek egungo egoera eragin dute. Espainiatik kazetariak etortzen ziren eta gure etxe aurrean jartzen ziren. Etxetik ateratzen zenean anaiaren zelatan egoten ziren, baina guk ez genien kasurik egiten. Hala ere, gezur horiek eragina izan dute. Anaia kaletik kendu nahi zuten eta azkenik lortu dute. Haiek anaia laster hilko zela uste zuten, baina ez da hola izan.

**Beraz, zer da zure anaiari barkatzen ez diotena, oraindik ere bizirik egotea?**

Bai, horixe da.

**Zein da zure anaiaren osasun egoera orain?**

Anaiak hiru tratamendu hartu izan ditu, baina ez zuten lortzen minbizia ezabatzea. Hasieran minbizia moteldu egiten zen, baina geroago aurrerantz egiten zuen berriz. Gaitza zertxobait moteldu egiten zen, baina horrek ez zuen luzaro irauten. Urte hasieran anaia hirugarren tratamendua hartzen hasi zen eta honek ere ez bazuen ezer lortzen minbizaren aurkako tratamendua hartzeari utziko ziola erabaki zuen. Gauza bera gertatu zen. Eta, honez gain, azken tratamendu honen ondorioz gaizki pasa zuen. Gauez ezin zuen lorik egin, gorputzak ez zion tratamendua onartzen eta berak ezin zuen egoera hori  jasan. Beraz, orain ez du minbiziaren aurkako sendagairik hartzen. Ebakuntzarik ezin zaio egin, batez ere buruan, bertan hiru nodulo dituelako.Tratamenduak ezarri zaizkio eta dena alferrik izan da. Ezin da ezer egin. Sendagileek horixe esan digute. Orain itxoin egin behar.

**Eta zein da zure anaiaren legezko egoera orain?**

Erabat aldatu da, egun batetik bestera. Orain dela gutxi Bergarako epaitegira deklaratzera joan behar zuela jakinarazi zioten. Hau oso arraroa zen. Abokatuek oso arraroa zela esan zuten eta guri ere horrela iruditu zitzaigun, baina guk honek zer ekarriko zuen ez genuen somatzen. Beraz, 1986. urteko auzi zahar bat aurkitu dute, anaiak espetxean 17 urte egin eta gero, eta auzi horretan auzipetu dute, baina epaitu eta zigortuko balute ere nire anaiaren espetxe zigorra ez litzateke aldatuko, jadanik zigo-

**Espainiako egunkarietan nire anaiaz idatzitakoak gezurrak ziren, anaia tabernaz taberna ez zelako ibiltzen, hori gezurra baita. Eta anaiaren osasun egoera oso larria zen, gaizki zegoelako, baina presioa sortu dute eta gezur horiek egungo egoera eragin dute.**

rrik handiena (30 urte) hartua duelako. Auzi berri honek ez du anaiaren espetxe zigorrean inolako eraginik. Nire anaia beste auzi batzuetan epaitua eta zigortua izan da. Eta auzi horietan jadanik epaitu eta zigortu bazuten ere, baldintzapeko askatasuna eman zioten 2012an, bere osasun egoera oso larria zelako, baina hala ere orain auzi berri horretan epaitu ez duten arren, neurri zorrotza ezarri diote, epaileak etxean preso egon behar duela erabaki duelako. Orain ezin da etxetik atera. Ertzainak orain etxe aurrean gau eta egun daude, anaia etxetik ez dela ateratzen ziurtatzeko. Ertzainek anaia lasai uzten dutela esan daiteke. Noizean behin ertzainak etxera etortzen dira eta behin gaueko 11etan etorri ziren, anaia jadanik ohean sartua zegoela, baina hori behin gertatu zen bakarrik. Anaia etxetik bakarrik atera daiteke sendagilearengana joateko eta ertzainek eramaten dute.

**Eta zure anaiak egoera nola bizi du?**

Hasieran kolpe gogorra hartu zuen, berak eta guk, ez genuelako ulertzen. Guk ezin genuen sinistu eta abokatuek ere hau ulertezina dela diote, baina orain anaia lasai dago. Jendearekin hitz egin du, batekin eta bestearekin, eta orain lasaiago dagoela esan daiteke.

**Eta zure ustez, zergatik jokatu dute orain honela?**

Egia esan, egiten dutenari logika aurkitzea oso zaila da. Anaia jadanik zigortua dago eta zigorrik handiena eman zioten, eta auzi berri honetan epaitu ez duten arren neurri zorrotza ezarri diote. Honek zer eragin digun? harridura, tristura, amorrua, ezintasuna...Anaiak ezin du ihes egin, ez baita ibiltzeko gauza. Ihes egiteko arriskua ekiditeko espetxeratu dutela esatea guri barre egitea da. Anaia nora joango da? Aske gelditu zenetik Arrasaten dago, herritik ateratzeko beti baimena eskatu du, baldintza guztiak bete ditu. Bergarako epaitegira joateko ere Arrasatetik ateratzeko baimena eskatu behar izan zuen. Hau mendekua dela besterik ezin dut pentsatu. Espainia aldeko elkarte eta egunkari batzuek (AVT-ek eta bestek) presioa eragin dute eta epailea joko horretan sartu da. Orain itxura gogorra erakutsi nahi dute eta hori lortzeko euskal preso gaixoen aurka egin dute. Itxura gogorra lortzeko egoera makalean daudenen aurka egiten dute.

**Eta bukatzeko ezer esan nahi duzu?**

Bai, egoera gogorra izan arren, beti egongo da laguntzeko eta aurrera egiteko prest dagoen jendea, eta hori eskertzekoa eta txapela kentzeko modukoa da. Guk, anaia eta senide moduan, Arrasateko herriari eta Euskal Herri osoari guri emandako laguntza, elkartasuna eta laguntasuna eskertu nahi diegu. Mezu hau zabaldu nahi genuke: eskerrik asko bihotz bihotzez guztioi.

# ekarpenak

## Elurra

Euskal presoak urte luzeak eginak zituen Euskal Herritik urruti, Espainiako hegoaldeko espetxe batean, eta udan bereziki, eguzkiaren bero latza pairatu behar zuen, bero latza eta izerdia, izerdia eta bero latza, etengabe, horixe baitzen urteroko kontua, ezinbestez. Urte luzeak emanik zituen elurra ikusi eta sentitu gabe, Andaluzia aldeko espetxeetan elurra ikustea miraria baitzen, edo garbi esanik, guztiz ezinezkoa.

Euskal presoak elurra maite zuen, gogoko baitzuen, horrek etxeko giroa zekarkiolako nolabait, bere sorterria elurrak estalirik ikusten zuenekoa. Herriaren inguruko baso eta mendiak elurrak harturik ikustea maite zuen, eta honelakoetan baso eta mendietan txangoak egiteko ohitura zuen, giro horrek goxotasun berezia sortzen baitzion. Baina hori iraganeko kontua zen. Euskal Herritik tokitan dagoen espetxe batean zegoen, eta elurra ikustea eta sentitzea ezinezkoa zen, bazter horretan bero latza besterik ez zegoelako, bero latza eta zerdia, izerdia eta bero latza. Elurra telebistan edo argazkietan baizik ezin zuen ikusi orain.

Dena den, urte batzuk lehenago euskal presoak istilua izan zuen kartzelari batekin, eta horren ondorioz kartzelariak salatu egin zuen, euskal presoak heriotzezko mehatxuak egin zizkiola esanik. Jakina, hau ez zen egia, euskal presoak ez baitzuen kartzelaria mehatxatu, baina kartzelariak bere agintea auzitan ikusi zuen eta halakorik ezin zuen onartu. Beraz, euskal presoari zigor bikaina ezarri behar zitzaiola erabaki zuen eta salatu egin zuen. Euskal presoa auzipeturik eta zigorturik ikusi nahi zuen, eta ahalegin guztiak egingo zituen helburu hori lortzeko.

Salaketa larria zen eta bere bidea egin zuen. Azkenik, euskal presoa Madrilen epaitu behar zutela erabaki zuten, Auzitegi Nazionalean. Eta horrela gertatu zen.

Epaiketa abenduaren 18an burutu behar zela erabaki zen, neguaren atarian, eta epaiketaren data hurbildu zenean, euskal presoa Andaluziako espetxe batetik Madrilera eraman zuten. Eta, aspaldiko partez, euskal presoak elurra zuzen-zuzenean ikusi eta sentitu ahal izan zuen, Madrilen izugarrizko elurtea izan baitzen, eta espetxea ere elurrak estalirik gelditu zen.

Euskal presoak, elurra ikusi eta sentitu gabe urte luzeak eman ondoren, lehenbiziko aldiz elurra eskuan hartu ahal izan zuen, eta patioan elurraren gainean han-hemenka ibili zen, batetik bestera.

Izan ere, une horiek biziki goxoak eta gogoangarriak suertatu zitzaizkion euskal presoari, bere burua sorterrian ikusi baitzuen nolabait, inguruko baso eta mendietan berriz zebilela. Eta ziegan zegoela ere, egun osoa eman zuen elur malutak emeki-emeki nola erortzen ziren leihotik begira, orduak eta orduak, ikuskizun hori zoragarria iruditzen zitzaiolako.

Epaiketa burutu ostean, euskal presoa errugabetu egin zuten, kartzelariak ezin izan zuelako frogatu ustezko heriotzezko mehatxuak egiazkoak zirenik. Eta, orduan, euskal presoak hauxe pentsatu zuen, agian kartzelari hori ez zela horren ankerra eta gaiztoa, berak egindako salaketari esker, euskal presoak elurra zuzen-zuzenean ikusi eta sentitu ahal izan baitzuen berriz ere. Eta agian horrexegatik egin zuen gezurrezko salaketa kartzelariak, euskal presoak elurra berriz ere ikus eta senti zezan nahi zuelako edo. Batek daki.

(*Ataramiñe'11*-tik hartua)

# José Angel Aramendik alabari idatzitako gutuna

Kaixo alaba maitea:

Hemen naukazu paper zuri baten aurrean, zer esan eta zelan esan pentsatzen, barruko korapilo guztiak askatuz. Oso zaila egiten zaigu hainbeste burutazio, bizipen eta sentsazio gazi-gozo paperera pasatzea. Euskaldunok ez ei gara izan idazle trebeak, are gutxiago norberaren barne kontuak azaltzerakoan. Edozein kasutan, hemen gaituzu, kostata ere ahalegin sendo bat egiten, zeren eta aita lez esan behar dizudana beste milaka guraso, neba-arreba, adiskide eta abarrek esan dezaketena da; pasatutako estualdi, kezka, ardura eta abarrak berdintsuak baitira egoera hau bizi izan dugunon artean.

Oraindik bizi bizirik dugu gogoan, amak eta biok, sasira joatea erabaki zenuela esan zenigun eguna, momentua. Erabaki gogorra, konprometitua eta arriskutsua. Imajinatzen dugu zelan sentituko zinen zeu ere horrelako urrats bat ematerakoan; zelako burutazioak izango zenituen hainbeste estualdi aurreikusiz, pasarte bortitz ugari imajinatuz eta are gehiago azken muturreko egoera batean sentituz.

Zuk esandakoa entzundakoan, gure barru guztiak uzkurtu egin ziren, eztarria lehortu eta hitzak desagertu, eta bihotza ziztu bizian hasi ez dakigu nora joateko asmoz.

Etxean pasatako azken gaua ere oso gau luzea izan zen: lokartu ezinik, pentsamenduak kontroletik kanpo, alaba joan egingo zaigula asumitu beharrik –ezin jakin noiz arte- eta beragaz alaba batek gurasoei eman ahal dien guztia: bere ahotsa, maitasuna, iskanbila, eztabaida, laguntasuna…Oso aldapa gogorra, benetan. Zer pasatuko zenuen zeuk ere, inor baino kontzienteago izanik zer ondorio izan zezakeen emandako urratsak, benetako konpromisoak eragindako urratsak.

Eta ze gogorrak eta luzeak sasiko urteak, zeu babesten ingurukoei "gezurtxoak" esanez eta alde egitearen berri ahalik eta beranduen izan zezan "otsoak". Irribarrea aurpegian, "estudiatzera joan da", "praktikak egiten dago"…; azkenean, zama guztia bakarrik ez irenstearren, batzuei behintzat egia esan arte, euren babes apur bat lortuz. Bitartean burutik kendu ezinik, "zelan ibiliko ote da alaba?", albistegi guztiak jarraituz eta herri honetako beste hainbeste gurasoekiko sintonian bat eginik.

Ez harritu diotsudanean atxiloketaren albistea estatu frantsesean izan zela jakitea arnasaldi sakon bategaz jaso genuela. Pentsamendurik larrienak baztertuz, beste bide bat egin beharraz jabetuz, baina guretzako bizirik eta osorik zinela jakinda ez genekien zer egin, negar, barre, poztu, arnasa sakon hartu eta barruko tentsioak orekatu…Herrian, atxiloketen salaketa publikoak indartu egiten zaitu eta ETXERATeko kideek emandako babesa ahaztu ezina da. Eten bako kate baten begia, bat gehiago.

Eta orain artekoa ondo ezagutzen duzu; gure bizitza gehienbat zure egoeraren inguruan biraka dabil. Bidaiak prestatu, zer faltako zaizun, liburuak, ikasketak eta gainerako guztia, are gehiago izandako epaiaren ostean, epai luzea, zigor handia. Edozein kasutan badakizu, hemen gaituzu eta izango gaituzu. Eta harro gainera.

Eskerrak zuoi, zuok hartutako bideari, konpromisoaren bideari jarraituz, pertsonen arteko sufrimenduak eragindako sarea ehundu dugu eta hasi behar dugu sufrikario hau argitaratzen, salatzen, publiko egiten, ze zuokiko gorrotoak eta mendeku goseak geu ere biktima egin gaitu. Eta gaur diotsudana ez da barria, zeuk ere hori badakizu baina esan behar nizun, beti izango zarelako gure bihotzean, beti izango duzulako gugan abarogune eder bat, zuok zaretelako herri honetako lorerik ederrenak. Maite zaitugu.

Aita eta ama

